JAUNGOIKO-ZALE'REN IDAZTIAK

M-2039
R-34036

# IPUINTXOAK

SCHMID—MANTEROLA'TAR G.

ZORNOTZA'N
JAUNGOIKO-ZALE'REN IRARKOLAN
1929

†

Nihil obstat

*Lic Romanus Laspiur*

Censor

*Victoriæ, die 18 Februarii, 1929*

IMPRIMATUR

*Victoriæ, die 20 februarii 1929*

Pro-Vicarius Generalis

*Dr. Justus de Echegaren*



# GALBURUAK

Seme txikiena
laguntzat ebala,
yoan zan lugin bat
gari solora,
yakiteko asmoz
bere sail ederak
eldu ete ziran
igitarora.

—Ene aita, zelan
—mutikoak diño—
gari batzuk dagoz
lerden, zutunik;

beste asko bańiz
luŕean etxunda,
lotsa ba'lira lez
dagoz apalik?

Dirudienez ba,
lerden dagozanok,
askozaz obeak
izango dira,
ainbesterano ba
etziran yausiko
besteok, edeŕak
izan ba'lira.

—Ara, ene seme,
etxunda yagon au,
alorta edeŕez
beterik yagok,
lerden yagon ori,
aŕo egon aŕen,
aletxo bat barik,
lasto utsa dok.

Eure gogoan ba,
yosi eik betiko
esango yoadan,
egi garbia:
«Ezyakiña aŕoa
izaten dokan lez,
apal-apala dok
yakituria».



# LILIA

KOLDOBIKE'K eta, eukien lorategi baten, ezpel landaraz inguratuta, lili edeŕ mardula, lerden ta zuri-zuri agertzen zan.

Lili aren neuŕira eltzen ez zan neskatotxoa, goiz baten lora ain edeŕai begira egoan. Iñontzez beterik, eguzkiaren lenengo izpiak, dis-diska bere oŕietan ebiltzen, aŕi-bitxiz beterik bai litzan.

Pozez eta eskaŕ onez beterik, eguzki, iñontz eta loren Egil̃eaganantz bere begiak yaso zituan.

Gurasoak, euren alabatxoaren ontasuna oaŕtu eben eta ixilka alkaŕi esan eutsen: «Edeŕ eta zoragaŕi lora oŕen antzera, bera be eŕugetasun lili bat ez ete da?»

Baña urtea amaitu baño len, Koldobike il zan, eta lilia baŕiro loratu zanean, bere ama naigabetuak, beren alabatzaz gogoratuta, negaŕari emon eutson.

Orduan aitak esan eutson:—Oraingo lili edeŕ au oraindiño baratzeko ertz baten landaratxo zalarik, aldatzeko atara nebanean, gure Koldobike'k atsekabe andia aŕtu eban, tamala zala esanaz. Baña gero, lilia luŕ obera aldatuaz baratzaren apaingaŕi biurtu zanean, Koldobike pozez bete zan, eta aldatu nebalako eskeŕak egin eustazan.

Ama samuŕ oŕek ba, ez egizu negaŕik egin, ori egin beaŕean poztu zaitez, ba luŕetik aldatua izan aŕen, zeruan gotzonen artean, dis-dis ez ete dau egiten?

Ludi galdutik uŕuti,
gure lili garbia,
Yaunak berak aldatu dau
donokien erdira,
baratz edeŕ ta betiko
edertasun tokira.



# ARBIA

NEKEZARI txiro batek, gustiak aŕituta itxiten zituan arbi (nabo) aundi bat bere baratzean aŕtu eban.

Eta bere artean egin eban: Neure ugazaba konde yaunari eroan beaŕ dautsot, baratzak arduraz landutea atsegin izaten yako-ta.

Kondea bizi zan gastelura eroan eutson ba, eta arek bere lankoŕtasunaŕen goraldu neban, eta eskeŕak egiñaz bere zintzotasuna saritzeko iru ontzuŕe emon eutsozan.

Baseŕi atako lugin aberats aña zikotza zan batek au yakin ebanean, berakautan esan eban: Neuk be izko edeŕ-edeŕ bat daukot, eta bereala gasteluko yaubeari eroan beaŕ dautsot... Arbi ezerez bategaitik iru ontzako emon ezkero, nirea

lango izko bategaitik zenbat emongo ete yozak!...

Bereala izkoa lepotik lotu, eta gasteluko yaunari eroan eutson, bere eskintza ontzat aŕtzeko esanaz. Baña kondea zuŕa zan, eta zikotza zetan etoŕen igaŕi eban, eta ez eutson aŕtu gura izan.

Baña lugiñak aŕtzeko ta aŕtzeko ekin eutson, eta eskintza andia ezpazan be, abegi ona egiteko.

Kondeak sentzun andia eukon eta esan eutson: Tira ba, zure eskintza aŕtu eragiteko ainbeste alegintzen zaran eskero, neuk be gitxiago ez dot gura izan. Alan ba, izko oŕek balio daben baño, bi edo iru bidaŕ geyago kosta yatan gauza bat emongo dautzut. Eta geyagoko barik berak ekian arbi edeŕa eskiñi eutson. Lugiña gustiz lotsatuta gelditu zan.

Biotz zintzoak beti aŕtzen dau
egiñen onen zaria,
Besteren onaz ez iñartzirik
nai ezpogu lotsaria.



# AZA AUNDI BAT

Yon eta Andoni langileak, baseŕi batetik zeaŕ yoyazala, baratz baten ondotik igaro ziran.

—Begira!—esan eban Yon'ek—oŕek dozak aza tzaŕak! Neure bizian andiagorik etxoat ikusi!

—¡Ba!—erantzun eban Andoni'k aŕokeriz—oŕek zer ikusi andirik etxeukiek. Nik ibilaldi baten ikusiñoan bat; an bean ikusten dokan txaunburuaren etxea baño andiagoa.

Yon galdaragiña zan, eta bereala erantzun eutson:—Oŕaitik gomutetan nok galdara bat egin giñoala, txaunburu-etxe alboan yagoan eleizea baño andiagoa.

Baña Yaungoikoaŕen—erantzun eutson An-

doni'k — ainbesteko galdara tzaŕa zertarako zoan?

Yon'ek yardetsi eutson: Euk ikusi eindun azea egosteko.

Andoni au entzunik lotsaz goŕi-goŕi egin zan. Eta esan eutson: Ik guzuŕik esateko oiturarik ez daukok, eta ori esan daustak lelo-lelorik, neuk esan daudan guzuŕagaitik lotsatu eragiteaŕen. Ondo yagok eta pozez *tantua* emoten daustat ba...

Esakun zaŕak diñon legez,
«Guzuŕ zaleri andiago»
Guzuŕ-eraiŀe danak saŕi yok
txindi bardiña beretzako.

---



# MATS - AYENA

BARATZAIN batek bere etxe auŕean mats-ayen bat ipiñi eban, eta bere adaŕostoakaz etxe -auŕe gustia estaltzeraño eldu, ta mats-mordo gozoak bere baŕuan eskutatzen zitualarik.

Auzoko batek mats landara edeŕari bekaitzez bagiratzen eutson-eta, gau baten, adaŕik indaŕtsuenak ebagi egin eutsozan.

Uŕengo egunean, ugazabak bere paŕea alan mostuta ikusi ebanean, atsekabe andia aŕtu eban, aldi atan ba ez eklen ondiño; matsak igali ugariagoak emoteko, adaŕak mostutea onuratsua zanik.

—Gogoz negaŕ egingo neuke, (iñoan gaxoak) neure matsak negaŕ egiten daben lez, bere adaŕak ebagi dautsiezala-ta!

Baña gauza aŕigaŕia! Urte atan mats arek uzta ugariagoa ta mordo edeŕagoak emon zituan, ordurarte emon ebazanetatik edeŕenak.

Etsayak saŕi gure kaltean
bekaitzez egin oi dauna;
Yaunak alantxe nai dabelako,
gutzat onuratsuena.

---



# AZA - OŔIAK

AMA gustiz dulabre batek, bere baratzan gustitariko ortuariak zaintzen zituan. Egun baten bere alabeari esan eutson:

—Koldobike; ikusten dozan, oŕi onen lepaldean agiri dozanan mota zurizke oŕeik? Oŕetariko bakotxa, aŕautzatxo bat don. Gerorantz ortikxek sortzen dozan, ik ainbeste bider aŕiturik ikusi dozanan, margo ederdun asoin edo aŕak. Eta aŕok gero an bean jira-biraka ikusten dozanan mitxeleta zuri biurtzen dozan, ainbeste kalte egiten dabelarik.

Bazkal ostean arduratu adi ba, guztiak aztertu, eta aurkitzen dozanan ařautza guztiak zapaltzeko. Orixe egiten ba'don, gure azak beti orlegi ta mardul iraungo yone.

Koldobike'k ořetarako astia eukiko ebala uste izanik, amak emondako agind̄uaz aztu egin zan.

Bere ama gexotu zan, eta aste batzuetan baratzera ezin izan zan yatsi. Baña osatu zanean, bere alabea eskutik ebala, azak ipiñita egozan tokira eroan eban.

¡A zan ikuskizuna! Azok; ařak gustiz mauka-iruntsiak aurkitu zituezan; aza-ořien zanak eta zortzanak baño ez ebezan idoro!

Koldobike, bere nagikeriaren ondorenak zirala-ta lotsaturik, negar da negar asi zan.

Orduan amak esan eutson:

—Ořexek erakutsikouna, gaur egin aldonana biarko ez itxiten. Baña beste ikaskixun edeřago bat be, biřindutako oři ořeitan idatzirik yagola yirudin: Auxe don:

> Ekandu txařa zapaldu daigun
> sustartu baño lenago;
> atzamařeko gatxa ba laster
> zabaltzen don besoraño.



# INTXAUŔA

Baserri--etxe baten ondoan egoan intxaur -zugatz andi baten azpian mutiko bik intxaur ale bat aurkitu eben.

—Neurea dok — esan eban Iñaki'k — neuk ikusi yuat lenengo!

—Ez! neurea dok—erantzun eutson Andoni'k —neuk artu yoat-eta.

Eta bereala eztabaida gogoŕean asi ziran. Une atan bertatik igaro zan mutil zaŕago ta indartsuago batek esan eutsen:

—Neuk bakeak egingo yoadaz. Eta bien erdian yaŕi, intxauŕa erdibitu eban eta biekana biurtuta esan eutsen:

—Azal erdi au intxauŕa lenen ikusi ebanena dok. Beste erdi au, artu ebanena. Baŕuko mamiña baŕiz neuretzat, neure erabagiaren ordaintzat.

Eta baŕez esan eutsen: Auxe dok auzi gustien azkena.

Yakin nai bo'zu dana galtzeko
egokien dan bidea,
ekizu dala, ezpairik gabe,
lagun arteko auzia.



# EGUZKIA

BEIN emakume maratz bat, bere seme ta alabeagaz baratzean lan eginda, ilunabaŕean etxera biurtu zan. Etxean sartu ziranean, mai gañean argi bat ixiotuta ikusirik, aŕitu ziran.

Yorka'k izuturik esan eban:

—Etxean iñor ez ta au zelan izan leiteke? Ardi au nok ixiotu ete dau?

—Nor izango zan ba, aita izan ezik, erantzun eutson Margarite'k. Guk baratzean ekin dautsogun artean uritik etoŕiko zan.

Berealaxe etxea arakatzen asi ziran, eta pozez beterik alboko gela baten aurkitu eben.

Uŕengo goizean zelayan bedar ebateari ekin eutsoen. Eguzkiak bere edeŕtasun gustiak dis

-diska agertzen zituan. Yorka ta Margarite bere edertasunari begira, pozez beterik egozan.

Umeak—esan eutsen aitak—atzo geure gelako argia neuk ixiotu nebala lan andi barik igaři zenduen. Gaur argi edeřori goyetan dis-diska ikusirik, nok ixiotu daben igařiko ete zeunskioe?

Margarite'k erantzun eban: Ori, ziur-ziur Yaungoiko ona da. Argirik txikeřena be berez ezin leiteke ixiotu. Beraz eguzkia ixiotu dabena be norbait bai da.

Egia da izan be—eratzun eutson Yorka'k pozez.—Eguzkia, iľargia ta izařak, bedař, lora ta zugatzak, itz baten inguruan dakusgun gustia, bere eskuetatik urtena da.

Goyan dis-dis dagien eguzkia,
Yainko altsuaren ezaupidea.

---



# MASTEGIA

Mastegigiñak, il zorian egoala, bere semeai esan eutsen:—Ene seme maiteok: neure etxetxo au eta inguratzen daben mastegia bakaŕik yaraunizi edo erentzitzat itxiten dautzuet; baña mastegian ondasun andiak aurkituko dozuez. Luŕa ondo aztindu ta ondasuntegi ori idoroko dozue.

Aita il zanean, bere semeak su ta gaŕ luŕa aztertzen asi ziran, baña uŕe ta zidaŕaren azteŕenik be ez eben idoro.

Udagoyena eldu zanean baña, ainbeste nekez landu eben mastegiak, askozaz mats mordo

geyago emon zituan, eta beste urteetan lako bi irabazi eben.

Orduan igaŕi eben aitak aitatutako mastegiko ondasuntegiak zer esan gura eban, eta mastegiko ateburuan itz-neurtu oneik ipiñi zituezan:

Luŕik latziñen baŕu be,
uŕezko mia dago,
baña lanez izan ezik
ezin leike idoro.

---



# PEŔETXIKOAK

BEIN baten ama onak bere alabatxo Katariñe, aitari asko atsegin izaten yakozala -ta, peŕetxikotan mendira bialdu eban.

Biurtu zanean neskatoak esan eutson:—Ene ama! nik aurkitu dodaz gaur peŕetxikoen edeŕak! Begira!—esan eutson otzara zabalduaz.

Gustiak goŕiak dira ta bitxiz apainduta dagozala dirudi. Lengo egunean ekaŕi zenduzan antzeko txiki ta urdiñak be aurkitu dodaz, baña, erkin etsita bertan itxi dodaz.

—Zu zara kaskariña! erantzun eutson amak. —Oŕek, begirako ain edeŕak dirudien peŕetxi-

kook, oso edentsuak, (benenotsuak) dira, bañiz etxura bakotzak ezetsi dozuzan urdiñak egin -egiñean be onenak dira.

Ludi onetan gauza askogaz bardin gertatzen da. Onoimen (birtute) apal eta ixil asko dira zarata gitxi egiten dabenak. Eta oitura txař disditsuak bai'dira, leloak ařitzeko gai diranak.

Txařen guzuřezko azalak eřez, ene alaba, atsipetu geinkez, eta obenera eroan be.

Ba ene alaba,

Azal disditsuz oitura txařak
menperatzen dau gizona,
edenez bete gogoa eta
galdu erain be zoruna.

---



# BEDAR BIKAÑA

Birgite ta Paule baseritar mirabeak, otzarakada bana arnari buruan zituezala yoyazan.

Birgite'k etenbako ezpa ta mormoxetan ziarduan; Paule, ostera, bide gustian barez eta yolaserako gogoaz yoyan.

Eta Birgite'k esan eutson:—Olan bare egiteko gogoa zelan daukozu? Zure otzarakadea nirea baño ariñagoa ez da, eta ni baño indartsuago be etzara ba.

Paule'k erantzun eutson:—A, nik neure otza-

rakadan, zama gustia arintzen daustan bedaŕa ipiñi dot, eta oŕegaitik igaŕi barik daroat.

—Oŕaitiok, erantzun eutson Birgite'k—bedaŕ oŕek gustiz bikañak izan bear dau. Neuk be daroadan zama edo otzarakada au arintzeko, bedaŕ ori eukiteaŕen, ez dakit zer emongo neuken be...

Paule'k erantzun eutson:—Zama (karga) gustiak arindu ta neke gustiak gozatuteko indaŕa daukon bedaŕaren izena auxe da: *Eroapena*.

Zama astunena
arindukozu,
*Eroapenagaz*
artzen ba'dozu.

---



# EPEŔEN ABIA

MUTIKO bik mendi basteŕean egoan garitza baten, epeŕ abi bat idoro eben, eta aŕautzen gain egoan amea aŕapatzea lortu be bai.

—Ik aŕautzak aŕtu egizak, iñotson nausienak besteari, nik epeŕa gordeko yoat.

Aŕautzak epeŕak beste balio yabek.

Eta gasteenak erantzun eutson:—Ori egia ba' dok, eutsoz aŕautsok eta ekak eper ori,

Orduan eztabaidan asi ziran, eta azkenez al-

kaŕi uleetatik tiraka be bai. Buŕukan ziarduen artean, nausienari epeŕak eskuetatik iges egin eutson, eta gasteenak, uste barik aŕautzak zapaldu zituan. Eta ezer barik gelditu zirala ikusirik, baketu ta alkaŕi esan eutsen:

Zuzen yegoan bai, gure aita ekin da ekin egi au esaten yauskuanean:

Gogaldu saŕi aldiak beti
irakatsi daun egia:
«Galdu dan olo edeŕa baño
aŕautza bat dok obea».



# LUGINTZAN

NIKOLA, txiro ta alpeŕa zan. Bere etxe ingurua sasi - arantza ta sastraka baño ez egoan basotxoa zan.

Egun bero-bero baten, uztaldia zan ondiño -ta, Nikola nagikeriz uŕetx baten kerispean etxunda aurkitzen zan.

Une atan bere ondotik igaro zan lugin bat, burdi bete gari-asago eroyala.

Nikola bekaitzez burdiari begira egoan, eta ostaz-ostaz lugiñaren aguŕari erantzun eutson. Lugiñak geldituta Nikola'ri esan eutson:

Eure luŕalde oŕeri, laŕatuten itxi beaŕean, eure gorputz alpeŕ oŕek zapaltzen yokan añako luŕ atala egun bakoitzean layatuko ba'endu, urte bakoitzean nik burdi onetan yaroadan aña gari artuko eunke.

Nikola'k onu edo konseju au aintzat artu eban, eta sasi-arantza ta bedar txaŕak kenduta lanari gogoz ekin eutson. Eta alantxe solo edeŕ-aren yaube egin zan, eta txurikorik eralgi barik, bera ta sendia alikatzeko lain artuten eban.

Ludi gustiak lan egiten dau,
udabaŕiak lorak emon;
udagoyenak alort ugari
eskintzen dituz, beti, nai non.

---



# EGUZKIA TA EURIA

EKAITZ aldi ta eurite baten, mutiko batzuk euren artean mormoxetan ziarduen:

—Ene Yaungoikoa! Zer dala-ta eguzkiak beti argi ez ete dau egiten?

Aldi gitxi barru bai'zirudian, Yaungoikoak euren eskariak entzun zituala: Ila askotan, ortzean (zeruan) laño txikienik ez zan agertu ba.

Eta leortę ain luzeak, solo, zelai ta baratzetan kalte andiak egin zituan. Baratzean, landara, lorak igertzen ziran, eta gurari biziz itxaroten

eben liñoa be, ontza batzuk baño etzan asi.

Eta amak esan eutsen:—Ointxe igaŕiko dozue, euria, eguzkia baño beaŕizan gitxiagokoa ez dala. Yaungoikoaren yakiturizko erabagi onetatik, ikaskizun auxe beti atera egizue: Beti alaitasun eta atsegiñez bizitea ez da egoki, baita eroapen ta yakituria lortuteko, neke ta atsekabeak igarotea egoki dala.

Gogaldu daigun beti, Yaun-Yakituria,
pozez arturik beti bere guraria;
eguraldi ona lez ekaitz ta euria;
pozez gauza alaya, naiz atsekabea.



# BUZTIÑAŔIA

GIZON aberats batek, eztabaida gogoŕa izan eban bein nekazari bategaz, eta aberatsak asaŕę biziz, buztiñaŕi edo ladriḻu bat artu ta

yaurti eutson. Nekezariak buztiñaŕia artu ta bere etxera eroan eban, bere artean esanaz: Baileiteke egunen bat eltzea, aŕi au neuk berari yaurti al izango dautsodana, berak ezer egin al izango daustan bilduŕ barik.

Aberatsa, bere aŕokeri, alperkeri ta eralgikeriz, lur yota, ezeŕ barik geldítu zan. Egun baten soñeko arlotez yantzita, nekezariaren etxetxoaren auŕetik igaro zan. Une atan nekezariak igaroten ikusirik, gordeta eukon beñolako buztiñaŕia artu ta yaurtiteko asmoz uŕeratu yakon, baña bere bapateko asaŕea itota, berekautan esan eban:

Ointxe gogoratzen naz, txarto egiñari txarto egiñaz iñoz ez yakola erantzun bear. Neure etsaya, aberats eta altsu izan dan artean, beratzaz aspertu edo bengatzeko euki dodan zirikaldiari, eutsi egin beaŕ izan dautsodala uste izan dot, eta kistaŕ bati ez yagokon gogorkeria izango litzake, oin zoritxaŕpean dagoala, neure asper gogoa asetutea». Itzok esanaz, aŕia yaurtin eta ordez, ogi zati andi bat emon eutson, goseak eskean ipiñi eban lur yotako aberatsari.

Txarto egiña onaz ordaindu,
da kistar onen legea
etsaya bere maite beaŕ da
maite dogun lez anaya.



# TXORIAK

GAUZA zoragarienetakoa ziñez, aran erdian dagon eritxoa, inguru gustian arnari zugatzak dauzala. Gauza atsegingarienetakoa, usain gozoz aizea betetan daben loraz beterik, zugatz oneik udabarian ikustea.

Eta gustiz ikusgaria, zugatz adarok, udagoyenez, madari, sagar eta okaranez zamauta ikustea.

Txori askok euren enbor eta adaretan, inguruko pagoetan lez, abiak egiten zituezan, txoro-txio gozoz aizea betetzen ebelarik.

Gurasoak saritan euren semeai esan oi eu-

tsen, berez ikasitako abesti areitan aŕeta ipinteko, eta oartu bebai.

—Izaki txikioi kalterik txikienik ez egiteko arduraz ibiḹi zaiteze; euren abiei ez ikuturik be egin; araneko liliak yantzi, eta txoritxoei yanaria eskintzen dautsen Yauna atsekabetu gura ezpadozue. Gure maitasunez bakaŕik ba, Yaungoikoak emon dautsez lorai euren margo edeŕak eta usain gozatsuak, uŕetxindoŕai abots garbi atsegingaŕia.

Alan da gusti be, mutiko zakaŕ batzuk abiak aŕtu ta apurtzen ibilten ziran. Txoriak izutu ta apurka-apurka aranetik iges egin eben, eta aŕezkero baratz eta bedartzetan abestirik ez zan entsuten, eta eŕitxoa ixiltsu ta itun biurtu zan.

Mutikoen gaiztakeriak ori baño be ondoren kaltegaŕiagoak ekari zituan. Len txoritxoak yaten zituezan, eta ortuarientzat ain kaltegaŕi diran aŕak, izugaŕiro ugaritu ziran, eta osto ta lorak iruntsi egiten zituezan. Zugatzak, lasteŕ negu goŕian lez, soil gelditu ziran; eta len arnari edo fruta ugari yaten eben mutiko gaiztoak, sagar ale bat be yan barik egon bear izaten eben.

Txori abes samuŕak
ene ume maitea,
ta arnari gozatsuak
Yaunaren emaitzak lez
ba'dozuz maite;
txorien abitik
uŕindu zaite.



# AŔAUTZAK

Lugin bat bere seme ikasle zanagaz mayan yaŕi zan. Iru aŕautza yateko ekaŕi eutsezela ikusirik, aitak esan eban:

—Au gitxi dok; lau ekaŕi bear yoezan, bakotxak bi yan al izateko be.

Orduan semeak esan eutson:—Neuk agertu-

ko dautzut azpil oŕetan dagozan aŕautzak bost dirala.

Pozik entzungo daustat ba,—aitak erantzun eutson. Semeak ben-ben yaŕi ta yakitun aizeaz asi zan:—Iru aŕautza dagozan tokian bi be bai dagoz. Ezteritxo? Ederto—erantzun eutson aitak—ori argi yagok.

—Alan ba, aŕautza bi ta iru aŕautza dagoz azpil edo plater onetan.

Bai; ondo yagok-esan eban aitak eta auŕera.

Orain ba, begitu ondo—yaŕaitu eban semeak —Azpil onetan aŕautza bi ta iru egon ezkero, eta iru ta bi bost izan, argi dago azpil oŕetako aŕautzak bost dirala.

Ederto!—esan eban aitak—eskua azpilera luzetuaz. Nik ba, yango yoadaz iru aŕautzak ta beste biak euretzat.

Ona da batsuetan
oldospen zolia,
baña yatorduetan
aŕautza obea.

---



# AGO - BELAŔIAK

I

ANDIKI sendiko gaste ta aŕo antusteak, bera baño zaŕago ziran batsukaz etenbako baŕiketan ziarduan.

Aretatik zaŕenak au oarturik, esan eutson:

—Ene seme; Egiĺeak belaŕi bi, baña ago ba-

kaŕa emon eutzun; eta onek adirazten dau, itz gitxiago egin eta entzun geyago egin bear dozula.

Itz asko egin eta
entzuteztabena,
gogaikaŕia bai'da
ez baña ikastuna.

II

Beste gaste aberats andiki batek otsein bat etxetik yaurti egin eban, arazo baten zintsoa ez zala izan uste izan ebalako; eta bere burua zuritzeko astirik be ez eutson emon. Baña gauzak, ondo aztertuta, otseña eŕubako izan zala agertu zan. Orduan bere aitak esan eutson gazteari:

—Yaungoikoak, belaŕi bi emon dautzuz; batagaz salatariari entzun bear dautsozu; baña besteagaz salatua izan danari be bai.

Zurtasunak eskatzen dau
bieri entzutea,
iñoz be emon ez daizun
epai kaltegaŕia.

---



# ANOTS EDO AŔI BIZIA

YORKA mutikotxoak, ondiño ez zekien aŕi bizia zer zan. Zelai baten zegoala bein gaŕasika asi zan:—¡A! ¡A!

Eta bereala auŕeko mendiak bardin erantzuten eutsola oartu eban.

Norbait bertan ostenduta egoalakoan aŕiturik itandu eban:—Nor az i?

Eta lengo abotsak bereala eratzun eutson: ¿Nor az i?

Yorka'k orduan erantzun eutson:—I lelo bat az.

Eta itz bardiñak entzun zituan. Orduan Yorka asaŕeturik agora yatorkozan irain gustiak yaurtiten asi zan, berak ostenduta egoala uste ebanen aurka. Baña anotsak gustiak bardin biurtzen eutsozan.

Azkenez oyanean baŕura sartzea erabagi eban, an eskutauta egoala uste ebana idoro ta zigortzeko, baña ez eban aurkitu.

Bizkor etxera biurtu zan, eta yazotakoa amari edestu eutson, mutil zantzalen batek eskutauta iraindu ebala esanaz. Bere amak erantzun eutson:

—Oker ago mutil; ik euk esandako itzen otsa baño ez dok entzun. Ik oyanera begira itz samuŕa esan ba'endun, itz samuŕak erantzungo euskan.

Bizitzan be bardin gertatzen dok. Besteak geugaz dauken artu-emonetan, geu eurakaz garean lakoak saŕitan izaten dozak. Geu, begirakun bako, gogor eta lotsabako gure lagun-urkoagaz ba'gozak, eurakandik erantzun oberik ez yoguk itxaron bear.

Oyanen erantzuna
geuk esaten doguna.



# KORDELA

NIKOLA ta Godopredo gaztetxoak bidez yoyazala, kordel zar bat idoro eben. Berealaxe, batak berea zala, besteak be bai, eztabaida beroan asi ziran, euren gaṙasiak inguruko zelai ta mendietan be entzuten ziralarik.

Godopredo'k alde batetik kordela oratuta eukon eta Nikola'k bestetik, eta biak indarka alkaṙi kentzeko. Olantxe alditxoa igaro eben, eta azkenean kordela apurtuta biak lokatz artera yausi ziran.

Une atan bertatik igaro zan gizon batek esan eutsen: Eztabaida-zaleai orixe gertatzen yakek.

Uskeri utsagaitik gaŕasi ta eztabaida zaratatsuetan asten dozak, eta zer irabazten yabek? Ezer bez: saŕitan zuek lokatzez lez, lotsariz beterik geratzea baño.

Bakez bizi gaitezan
eztabaida barik,
eztabaidak ez dakar
iñoz be gauz onik.

---



## SASPI SARDAYAK

Aita batek saspi seme alkar aitu ezin ebenak eukozan. Euren alkar artu eziña aundia zalako, sarritan eztabaidak lana be galerazo egiten eutsen.

Egunerik-egunera asareak ugarituaz yoyazalako, auzokide zikoitz batzuk, sendi atako asareetatik onura atara gura eben, eta aitari, semeak ondoregabetuteko ta beste batzuei ondasunak itxiteko esaten eutsen.

Egun baten zar agurgarriak bere aurera saspi

semeai deitu eutsen. Saspi sardai (palu) asagotu edo txortaturik erakutsiaz esan eutsen:

—Auxe sardai txorta au, zati bi egiten dabenari, bereala eun ogerleko emongo yautzadazat.

Banan banan euren indaŕak neurtu ebezan, baña alpeŕik nekatu ondoren, esan eben:—Ezin leike apurtu.

—Alan da be, esan eban aitak, gauza eŕezagorik etxagok. Ikusi eikezue.

Itzok esanaz, txortea azkatu eban eta banaka gustiak apurtu zituan.

—¡A! olan gauza eŕaza da—esan eben gustiak batera.—Ume baten eskuak be naiko dira oŕetarako!

Orduan aitak yardetsi eutsen:

—Ara emen semeok; sardayok zuen irudi dozak. Alkartuta iraungo dozuen artean, zardayok asagotuta egon diran lez, sendorik iraungo dozue; eta iñok ez zaitue besauko. Alkartu bear zaituen lokaŕia apurtzen ba'dok, ementxe zeuen oñetan zatituta agertzen dokazan zardayon antzekoak izango zare.

Etxe, uria ta abeŕia,
argaltzen dira banantzez;
baña alkarturik dagozanean
ezin leiz besau indaŕez.

# AURKIBIDEA



